**URTARRILAREN 22an**
**San Bizente, diakonoa eta martiria**



## Sarrera abestia

**BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK**
Zugana gatoz, Jauna;
Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

Altarean aurkitzen da <u>kristau alaitasuna</u> (2).
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

**Erantzun salmoa** (Sal 033)




**R/. Bildur guztietatik askatu nozu zuk, Jauna.**

Bedeinkatuko dot aldi o**<u>ro</u>** Jauna,
nire ahoan beti haren go**<u>res</u>**pena.
Harro nago **<u>Jau</u>**nagaz,
entzun begie apalek eta poz**tu** beitez. R/.

Handietsi nigaz bate**<u>ra</u>** Jauna,
goratu dagigun alkarregaz haren **<u>i</u>**zena.
Jaunagana jo neban, eta harek **<u>e</u>**rantzun,
bildur guztietatik ninduan **<u>li</u>**bratu. R/.

Begiratzen deutsoenak distiratsu egon**go** dira,
ez jake aurpegia lotsaz go**rri**tuko._____
Dohakabeak dei egin eban, eta Jau**nak** entzun,
eta estualdi guztietatik eban **sal**batu. R/.

Kanpaturik dago Jaunaren ain**ge**rua
hari begirune deutsoenen inguruan, eta libra**tzen**
ditu.
Dastatu egizue eta ikusi zein ona **dan** Jauna;
zorionekoa harengan babes**ten** dana.




Gora Zu, Jainkoa, eskerrak Zu**ri**, Jauna;
martirien talde zuriz jantziak goratzen zai**tu**, Jauna. (R/.)

**Jaunartzean**

Hemen gaituzu, Jauna, ogiaren eske,
bizi behar honetan ahuldu bait gintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke:
zu barik bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak, iturri garbia;
besteok nahi badogu barruko bizia
beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula,
ogi hau jan dagigun behar dan bezela;
Ez ahaztu txarrerako jarriak gaozela:
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

**Kanta Jaunari** kantu Gora Jainkoa

barri,
kanta guztiok herriz-herri,
kanta Jaunaren izenari,
mundu guztia poz-kantari.

zeruetan,
goratu danok eleizetan,
goratu baita aingeruek
eta goratu lurrekoek.